

# Komunikazioan aritua

Euskal prentsan eta irratian lehendabizi.
Internet aroan edukiak sortzen gero.
Marketing digitalean eta sare sozialetan aritzen naiz orain.
Etorkizunei erronkak lantzeko unea iritsi da.

## 20 urteko esperientzia komunikazioaren arlo ezberdinetan. Estrategian eta edukien sorkuntzan espezializatua.

**Prentsa idatzia**
90. hamarkadan **Egunkaria**n eta **ARGIA**n idazteko eta parte hartzeko aukera paregabea izan nuen. Kolaboratzaile bezala eta plantilan ere bai lan egiteko aukera.
Internet eta teknologia berrietan murgiltzen hasi eta proiektu ezberdinetan murgiltzea egokitu zitzaidan. **irratia.com** sortu genuen 2000. urtean. Eta Susa literatura argitaletxearen **armiarma.com** proiektuan hasieratik aritu naiz.

**Ikus entzunezkoak | Irratia eta telebista**
Luzaroan irratigintzari lotuta egon ostean, **Hamaika** telebistan *Albisteak 2.0* saioa egiten hasi ginen. Azken bi urteotan **Euskal Telebistan** iritzia emateko aukera izan dut; euskaraz ***Egunon Euskadi*** saioan eta gaztelaniaz denboraldi batez arrakastatsuagoa zen ***Por Fin Viernes*** saioan.

**Sare sozialak | social media |**
Gaur egun, komunikazioari ekiteko sarean sortzen eta mugitzen denari adi egon beharra dago. Urteetako esperientzia daukat sare sozialetako estrategia antolatu eta kudeatzen.



## Aurkezpena



*Ondo formatutako pertsona ezin da zapaldua izan, bere kabuz pentsatzeko gauza delako*

Nelson Mandela

**Patxi Gaztelumendi** - Larrabetzu

Ez da ohikoena norbere buruaren aurkezpena egitea, baina uste dut garrantzitsua dela. Patxi Gaztelumendi naiz, laister 44 urte beteko dituen larrabetzuarra.
Komunikazio kezka edukitzeaz gain, arduratsua eta konprometitua eguneroko lanean eta zereginetan.

### Formazioa eta borroka ideologikoa

Sekulako garrantzia ematen diot formazioari. Politikoa, soziala, kulturala. Jantzi beharraren motibazioa daukat, eta inguruan hori kezka hori hedatzen saiatzen naiz. Irakurtzea, solasaldiak entzutea, hitzaldiak antolatu eta parte hartzeari garrantzitsua deritzot. Borroka ideologikoa funtsezkoa da egunerokotasunean bezala, etorkizunerako baldintza hobeak lortze aldera.

### Musika, literatura eta bidaiak

Kulturgintzan une on asko emandakoa naiz, are gehiago dira jaso izan ditudanak. Hartueman horretatik, musika eta literatur zaletasuna landu izan ditut batez ere. Oso gertutik jarraitu eta bizi ditut, eta bereziki maite ditut.
Bidaiatzea ere atsegin dudan arloa da. Oso gaztetatik saiatu naiz gure herria ez ezik, nazioartean ibiltzea ere.
Euskal Herriko txokoak gertutik eta bertako jendearekin ezagutzea dut gustuko, eta kanpora goazenean nongoa naizen erakustea ere atsegin dut.
Tokian tokiko kultura, ezugarriak eta istorioak entzuten orduak eman ohi ditut.

### Larrabetzu euskal herria

Bizkaiko herri txiki honetan jaio nintzen, eta berton bizi naiz gaur egun ere, neskalaguna eta bi mutikorekin. Herri bizia da gurea; eta bertoko ekitaldi, zeregin eta antolakundeetan parte hartu izan dut, eta oraindik be ateratzen dut asti apur bat murgiltzeko. Herri euskalduna da gurea, eta larrabetzuarra izateaz harro nago ni neu be.



# Gure esku dago | Komunikazioa
## Motibazio gutuna







Sortu zen unetik egin zitzaidan erakargarria **Gure esku dago** mugimendua. Izaera, aldarrikapena eta formak. Irungo Ficoban hurrengo urteko Durango eta Iruñea arteko giza katearen berri izan, eta urte berean Kataluniako Diadan parte hartzeko aukera izan nuen. Ondo girotu eta bertatik bertara ezagutzeko.

Gerora, batean eta bestean parte hartu. Herri batzarretara joan, eta ahal izan dudan heinean mugimendu hau laguntzen saiatu naiz. Eta apurka apurka lorpenak eta emaitzak etorri dira. Eta baita erronka berri eta ausartak ere.




### Herri mugimendu izaera eta nazioarteko egoera

Antolaketa eredua eta herri mugimendu izaerari uko egin barik, erronka ederrak ditugu begien parean. 2016 eta 2018. urteen artekoa ez da makala. Eta horretarako herri estrategia sendo dinamiko eta iraunkorra beharko dela sinestuta, ni neu ere nireak eta bi emateko prest.

Aukera historikoa da, eta herri honek profitatu behar du. Eta gainera egiten dugun hori, erakusten saiatu behar gara. Hobeto egiteko, barne mailan komunikatzeko, hedatzeko, eta nazioartean erantzun egoki bat izateko.




### Estrategia eta berrikuntza

Komunikazioari dagokionez, herri estrategia berritzaile honek ondoan beharko du estrategia komunikatibo sendoa ere. Orain artekoan sakondu, eta ahal den neurrian hobetu eta garatzeko beharra egongo denez, nik neuk nire burua egoki ikusten dut horrelako zeregin baterako. Orain arte maila ezberdinetan komunikazio zereginetan ibili ostean, herri honen apustu eta etorkizuneko erronkekin bat datozen ekimenetan parte hartzeko prestutasunarekin.



*Hezkuntza da mundua aldatzeko dagoen armarik garrantzitsuena*
Nelson Mandela



### Lan esperientzia

**2013-2016** Formazioa social median eta **Euskal Telebista** (Por fin viernes / Egunon Euskadi)
**2011-2013 EHNE Bizkaia** komunikazio estrategia | **Baserri Bizia** aldizkaria
**2005-2010** Informazio eta kultura teknkari **Arrasate**ko eta **Elgeta**ko **udaletan**
**2000-2005** Autonomoa **web edukiak** sortzen.
**2000**. urterarte Euskal hedabideetan: **Egunkaria**, **Argia**, **Egin irratia** eta **Europa press** agentzian.



### Ikasketak eta formazioa

**Agroekologia eta Elikadura burujabetza** masterra **Hegoa**+**La Via Campesina**
**Euskal Kulturaren transmisioa** graduondokoa Huhezi, **Mondragon Unibertsitatea**
**Kazetaritza** ikasketak euskal adarrean **Euskal Herriko Unibertsitatea**
**Informatika** eta **Kazetaritza** sailetako kide Udako Euskal Unibertsitatean




### Internet, teknologia berriak eta dibulgazioa

20 urte baino gehiago komunikazioaren inguruan murgilduta.
1994tik Internet erabiltzaile eta batipat eduki sortzailea.
**irratia.com** lehenengo euskal irrati digitala 2000. urtean
**Albisteak 2.0** telebista saio transmedia 11amaika telebistan.
Hizlari eta irakasle komunikazioa, sare sozialak eta teknologia berrien inguruko formazioetan.
**Dibugalzioa** euskal hedabideetan: **info 7 irratia**, **Euskadi irratia**, **Euskal irratiak**, **Hala Bedi**, **97 irratia**.




### Nazioartea eta hizkuntzak

Nazioarteko egoerak bereziki kezkatzen nau.
1991an **Irlanda**n egon nintzenetik, hango bake prozesua eta bere bilakaerak arreta piztu dit.
**Kataluni**ako prozesua ere gertutik jarraitzen dut. (Katalana ikasten ari naiz apurka apurka)
2013an **Eskozia** ezagutzeko parada izan nuen.

Ingelesez berba egiteko gai naiz, eta egonaldi luzeak egin izan ditut Belfasten.

